#26
NEGUA 2014/15

Prezioa: 1€
Editatutako: Gazte Komunisten Kolektiboak-CJC



# Tinta Roja

30 urtez

Gazteria Komunista




‡ CJCren 30. urteurrenaren garrantziaz
‡ Asanblada eta elkarte baten arteko desberdintasunak
‡ 50 ikasleren erailketa basatia Mexikon
‡ Euren burua marxistatzat dituzten teoriak
[…]

# Aurkibidea




6



7



11




**2014/2015 Negua**

**Argitaratzen dute:** Gazte Komunisten Kolektiboak-CJC | D.L.: AB-119/2012.

**Kontaktua:**
www.tintaroja.es | tintaroja@cjc.es

**Zuzendaria:** Adrián J. Bertol

**Zuzendariordeak:** Mikel Tapia, Domènec Merino y Ana Escauriaza

**Diseinua eta maketazioa:** Cristian Popa y Ezequiel Blanco

**Argazkigintza:** Alejandro Sanz y Cheyene de la Guàrdia

**Laguntzaileak:**
Vanessa Rodríguez, Guillermo De Tuya, Pablo José Terrones, Estrella Alonso, Pablo Medina, Arturo Hermosa, Rodrigo, Alex Sanz, Pedro Pérez, Markel Pum, Roberto Guijarro, José L. Aedo, Rafael Medina, Ester Cubero, Sócrates Fernández, Liher Calleja, Ástor García, Guillermo Terán, J.M.R., Fernando Puertas, Eric Rodríguez y Marina Gómez.


## ★ Gomendioak

### *TintaRoja.es Atari Digitala*

Aldi oro gazteriari eragiten diguten **berrien** jakinaren gainean egoteko eta gaurkotasun maximoa duten gaien inguruko **gazteria komunistaren jarrera** ezagutzeko, Tinta Roja-ren atari digitala **egunero bisitatzea** gomendatzen dizugu: www.tintaroja.es

### *Unidad y Lucha*

Monopolioek beraien komunikabideen bidez erakusten dizkiguten informazioen aurrean, langile klase antolatuak bere egunkari propioa dauka: **PCPE-ren Komite Zentralaren adierazpen organoa. Ez diezazutela istorio gehiago saldu.** UyL langile klasearen Alderdiaren egunkaria da, langileek idatzia langileentzat.

### *Propuesta Comunista 71*

**PCPE-ren aldizkari teorikoaren 71**. alean Sócrates Fernández-en artikulu bat aurkituko dugu gainera **GKK/CJC-en 30 urteetako historia gainbegiratzen duena, dominazio formen aldaketak eta borroka komunistari** buruzko analisi bat Area Ideologikoaren arduradunak egina, gainera UyL-ren erredakzio kontseiluak langile klaseak eta sektore herritarrek kapitalismoan jasaten dituzten kolpeen egoeraz datuak ekartzen dizkigute. Nazioarteko alorrean, **ukrainiar krisiari buruzko** gogoetak garatzen ditu gatazka interinperialista modura eta **Pavel Blanco-ri eginiko elkarrizketa** batekin amaitzen da, Mexikoko Alderdi Komunistaren Lehen Idazkaria.

## ★ Bitxikeriak

### Ba al zenekien GKK/CJC PCPE-ren akordioz sortu zela PCE-rengandik banandu ziren komunistak batu eta gero?

1984ean **Komunisten Batasun Kongresua** jazo zen, non espainiar Estatuan Alderdi Komunista berreskuratzeko ahaleginak burutu ziren, PCE-ren deriba eurokomunistaren ondoren. **1000 delegatuk baino gehiagok** parte hartu zuten Kongresu historiko horretan.

1983tik aitzina hasten dira gazte destakamendu desberdinen koordinazio lanak **Gazteria Komunistaren lotura Komisioaren (CEJC, Comisión de enlace de la Juventud Comunista)** bitartez, alderdien biltzearekin batera. Batasun Kongresuan JM Céspedes-ek hitza hartuko du, Kataluniako CJC-en Idazkari Nagusi modura, eta CECJ-en buru bezala.

PCPE-k lehentasun bezala kokatzen du **Gazteria Komunistaren berreskuratzea Estatu mailan** eta prozesua gidatzen du, 1984eko amaierarako erabakita dago etorkizuneko Gazteria Komunista **GKK/CJC** deituko dela eta ordurako dagoeneko sigla bateratu horiekin joaten dira mobilizazioetara gazte destakamendu desberdinak.




JSU-ren 50. urteurrenaren oroimenerako pegatina. Historiaren norabide gorria langile klasearen baitan dago PCPE/CJCren borrokarekin bat.

Azkenik 1985eko urtarrilean, urtebeteko lan handiaren ondoren, PCPEk 30 p**robintzietako gazte komunisten delegazioei** dei egiten die. Topaketa hartatik Gazteria Komunistaren etorkizuna gidatuko duten lanerako dokumentu politikoak eta zuzendaritza Komisio Estatala sortzen dira, dagoeneko presentzia handia duena Estatu osoan.




# Editoriala

**B**orroka politikoan, eguneroko bizitzan bezala, hitzak ekintza bihurtzen ez dutenek **aho-handi edo gezurti** bezala besterik ezin dira kontsideratu. Eta gaur egun, alderdi baten edo bestearen interes elektoralez betea dagoen egunerokotasunean, **ekintzen garrantzia erreklamatzea, benetan zer denarena, egintza iraultzaile bat bilakatzen da** (Lenin-en hitzetan, "Egia beti iraultzailea da").

Podemos, Izquierda Unida, eta abarren proposamen guztietatik zeintzuk bilakatu daitezke errealitatean gobernura iritsiko balirateke? Banka publikoaz, ustelkeriaren jazarpenaz, pribilegioen deuseztatzeaz, langabeziaren ezabatzeaz, edo baita sektore estrategikoen nazionalizazioari buruz hitz egitea oso erraza da, **Marketing eta Komunikazio aditu on batzuei ordaintzea** nahikoa da, herriaren aldarrikapenak jasoko dituztenak; garrantzitsuena da ea proposamen guzti horiek errealitate bilakatu daitezken eta, are gehiago, ea langile klasea eta sektore herritarren bizitza-egoera hobetzeko burutuko diren.

Hauteskundeetan politikoak aukeratzen dira, baina zeinek aukeratzen ditu benetan gobernatzen duten eta Estatuaren boterea duten industria, energia, merkataritza eta banka oligarkak? **Bloke oligarkiko honen dominazioa zalantzan jartzen ez duen** alderdia, nahiz eta oso positiboak izan bere proposamenak, ezingo ditu aurrera eraman (ez ditu hitzak ekintza bilakatuko) eta, beraz, ahozabalen alderdi bat bezala besterik ezin dugu kontsideratu. Aho-handien alderdi bat bere gaitasun ezarekin **arazoen konplize** izango da. Gizartea klase sozial bakoitzaren posizioaren arabera aztertzen duen **klase ikuspuntu, marxista, ukatzeagatik** datorren ezgaitasuna.

**Gazte Komunisten Kolektiboen 30. urteurrena** dela eta, atzera begirada bat botako dugu 80. hamarkadatik aitzina bizi izan ditugun esperientziak aztertzeko. Ikusi ahal izango dugu **gertaera epikoak**, aurrerapenez beteak, egon zirela, baina baita **traizio eta erresistentzia gogorraz beteriko egoerak,** modu desberdinetako ezbeharrengatik. Baina seguru aski egoera latz horietatik izan da non gehien ikasi duen GKK/CJC-k, eta horregatik sendotu egin gara egun garen Gazteria Komunista izan arte.

Historian zehar komunista askok nabarmendu izan duten irakaspenetako bat da **oportunismoaren aurkako ageriko borroka** bat edukitzearen beharra, erakundearen barnean eta kanpoan. Honek lotura zuzena dauka hasieran esan dugunarekin: ezinbestekoa da gazte komunista orok **azkar ikastea aho-handikeria eta ekintzaile onen zintzotasunaren** artean desberdintzen, zein konstantea eta antolatua den. Batez ere egungo krisi garaian, non gizarte osoa hankaz gora jartzen den eta mugimendu eta alderdi mota desberdin asko azaltzen diren eztanda soziala bideratu nahian.

Egoera honen aurrean, herri langilearen gazteok, ezer galtzeko ez daukagunok, **bozka apur batzuengatik edo parlamentuko poltrona batengatik saldu nahi ez gaituen** alderdi bakarra zein den jakin behar dugu. Eta, dudarik gabe, alderdi hori ezin da izan ezer galtzeko ez dutenen alderdia baino, hau da, langile klasearen alderdia, programa politiko iraultzaile batekin: **Euskal Komunistak - Partido Comunista de los Pueblos de España zehazki.**

Ikusten dugunez beste alderdi guztiek **buru-belarri joko instituzionalean sartzen saiatzen dira** modu batean edo bestean, esanez oraindik neurri positibo batzuk lortu daitezkeela sektore herritarrentzat, errealitateak guztiz kontrakoa erakusten digun arren, eta hauek **berdin gobernatzen amaitzen dute**, PP, PSOE, PNV, CiU, IU eta laister Podemos ere.

Nahiz eta informazioaren monopolio handiek ordaindu eraso erraldoia sinestarazteko ideologien amaiera etorri zela eta komunismoa hilda zegoela, **ideologia komunistaren (marxista-leninistaren) garrantzia gero eta ageriagokoa da langile eta herri borroka bakoitzean,** komuniston zuzendaritzarik gabe aldarrikapenak urtu egiten dira eta azukre-koxkor baten moduan.

Aldiz, komunistok bertan gaudenean, langile, ikasle, bizilagun edo emakume langileekin batera borrokak indartzen, beti hauetan aztarna bat geratzen da, komunistontzat **borroka batek ez dituelako bere helburuak lortzen ez bada egitura antolatu batean bilakatzen** oligarkiari eta beraien jarraitzaileei aurre egingo diena etengabe.

Coca-Cola, Minerplan, Atento, Isofotón eta abarretako langileei galdetzea besterik ez daukagu: Katalunia, Madrid, Valentzia eta abarretako ikasleei,...: bai GKK/CJC-k eta baita PCPE-ek lagundu diegun ehunka lagunei, **sendotasunez babestuz pentsatu ere egin gabe geure burua entregatzea edo beraiek entregatzea.** Zeren eta, lehen esan bezala, guk ere ez dugu ezer galtzeko.

2015eko GKK/CJC-ok ez gara jada gazte erakunde bat printzipio oso argiekin baina ozta-ozta ezagutua zena. Gaur, GKK/CJC-ok 30 urteetako historia batekin gure atzean, banaezina PCPE-rekin, **gazteriarengandik gero eta errekonozimendu gehiago daukagun erakunde bat gara,** eta oraindik pauso gehiago eman nahi ditugu.

Jakitun gara gero eta gehiago aurrera egiten dugularik, **etsai gehiago sortuko zaizkigula, bai oportunismoaren barnean,** salatzen duguna kikildu gabe, **eta baita burgesiaren indar errepresiboetan,** polizial eta beste modukoetan, ahalegin guztiak egingo dituztenak gu gelditzeko (ekintza krudel higuingarriak barne, Mexikoko burkideei eginikoak bezala, Estatuak erailak). **Baina, egiten dutela egiten dutelarik, ez dute inoiz lortuko**. Zeren eta PCPE eta GKK/CJC gero eta langile gehiagoren aldetik errekonozituak garen heinean abangoardia bezala, erasoengandik babesteko gero eta ahalmen handiagoa dugu, erasora itzultzeko gure klaseari legitimoki dagokion postura eraman arte: botere politikora.

*Lurretik kendu ahal izango gaituzte, baina ezingo gaituzte langile prestuen bihotzetatik kendu.*

*Adrián J. Bertol*

**Komuniston aurrerapenak posizioz-posizio egiten dira, oportunisten marruei jaramonik egin gabe.**

# 30 urte ikasleen eskubideen aldeko borrokan

## Gure printzipioekiko beste koherentzia eredu bat!

Langile klasearen eta herriaren zerbitzura egongo **den doako eta kalitatezko hezkuntza publikoaren** defentsa, horra hor, azken 30 urte hauetan, GKK/CJCren eguneroko borrokaren oinarri garrantzitsuenetako bat. Gure helburua **ikasleak, euren eskubideen denfentsan, antolatzea** izan da beti, aldarrikapenak zabalduz eta herri nahiz langile jatorriko ikaslegoaren benetako etsaia zein den argi utziz, kapitalismoa.

**80ko hamarkadaren** erdialdetik, gazteria komunistaren berreraikitze prozesua betebetean zegoelarik, GKK/CJC ikasle borroketan izan da, garai hartan borroka unibertsitatera sartzeko traben eta selektibitatearen aurka planteatzen zelarik. **Felipe Gonzálezen gobernuak hezkuntzari egindako erasoen aurkako** borroka hauek erakunde komunistari aukera eman zioten hainbat antolakuntza esperientzietan parte hartzeko, horien artean **Heziketa Ertaineko Ikasleen Koordinadora** nabarmendu behar dugularik, hasieran Bartzelonako Eremu Metropolitarreko 40 institutu antolatzen zituena. Bestalde, unibertsitate mailan, CEEU zegoen, **Unibertsitate Ikasleen Estatu Koordinadora**, joera politiko-ideologiko orotako ikasle mugimendua koordinatzen zuena. 1985ean, GKK/CJCk koordinadora honetan parte hartu zuen berau desburokratizatu eta ikasleen borroken bizkarrezur izango zen tresna positibo bilakatzeko helburuarekin.

G K K / CJCk ikasle borroketan izandako parte hartzeak une horretan ikaslego borrokalariak zuen arazo handienetako bat detektatzeko balio izan zuen: **oinarritiko antolakuntza falta eta ikasle borrokaren noizbehinkakotasuna eta aldizkotasuna**

GKK/CJCk ikasle borroketan izandako parte hartzeak une horretan ikaslego borrokalariak zuen arazo handienetako bat detektatzeko balio izan zuen: **oinarritiko antolakuntza falta eta ikasle borrokaren noizbehinkakotasuna eta aldizkotasuna**. Borrokak iraun zetzan, beharrezkoa zen ikaslegoa oinarritik antolatzea. 1986tik aurrera GKK/CJCren apustua **izaera aurrerakoieko elkarte bateratu bat** sortzea izan zen, bertan erakunde ezkertiar guztiek biltzeko aukera izan zezaten, baina batez ere ikaslego masa handiek. Kontaktu politikoak bideratu ziren arren, elkarte bateratua garatzea ez zen posible izan hainbat gazte erakundek, sozialistek nola zenbait nazionalistek, euren sindikatu propioa sortu zutelako. Handik aurrera, GKK/CJCk **masekin bilatuko zuen batasuna erakunde hori sortzeko momentuan,** masekin eta ez "ezker" gisa ulertzen diren bestelako jarrerekin.

**1987ko apirilean** burututako **Ikasle Mugimenduaren inguruko Konferentzian** batu ziren hausnarketa politiko guzti horiek. Bertan ondorioztatu genuen Ikasle Sindikatua ez zela borrokarako balizko tresna bat (denborak hala konfirmatu digu) eta, ondorioz, gure proposamen estrategikoa **Ikasle Elkarte Bateratu bat sortzea** izango zela.

Teoriatik praktikara jauzia egiteko unean, konferentzia honen ostean gure **lana heziketa ertainetan oinarritu genuen,** unibertsitate mailako borroka oso bigarren mailako postu batera pasa zelarik. Ia Espainia guztian zeuden heziketa ertainetako kolektiboak, eta baita gure partehartze eta bultzada zuten heziketa ertainetako **hamaika ikasle elkarte ere**. Oinarrian burututako lan honekin batera, Heziketa Ertaineko Ikasleen Koordinadora bat sortu ahal izan zen, borroka zuzentzeko eta PSOEren gobernu sozialdemokrataren eraso bakoitzari behar bezala erantzuteko aukera eman zuena, borroka garai berriekin.
Bloke sozialistaren erortzeak eta esparru iraultzaileak bizi zuen krisiak baina, era nabarian kaltetu zituen GKK/CJCren eguneroko jarduna eta ikasle mugimenduaren baitan zuen eragiteko gaitasuna. Aurreko urte horietan zehar eraikitakoa, estatu mailako elkarte eta koordinadorak desagertu ziren eta, ondorioz, **antolakuntza mailan, 90ko hamarkada oso garai konplikatua izan zen ikasle mugimenduarentzat.** Hezkuntzaren pribatizazio eta merkantilizazioari ateak ireki zizkion **LOGSE**ren kontrako borroka garaiak izan ziren hauek. Ikasle borroka bakoitza ikasle elkarteak berreraikitzeari ekiteko aukera bat bezala planteatzen zuten komunistek, sortutako elkarte horien artean **Ikasle Aurrerakoiak** azpimarratu beharko genukelarik.

**1998an Bologna Plana onartu zen** eta, geroztik, hamaika izan dira hezkuntza kapitalaren mesedetara jartzeko aurrera eraman diren erreforma eta eraldaketak. **LOU, 2015 Unibertsitate Estrategia** eta, azkenik, LOMCE bera. Hau guztiau gutxi balitz, egunetik egunera ugarituz doaz kapitalaren erasoak hezkuntza publikoaren aurka.

Azken hamarkada honetan zehar, eta batez ere 2012ko **Ikasle Mugimenduaren inguruko Konferentziaren** nahiz 2013ko **GKK/CJCren VIII.** Kongresuaren eta Ikasle Mugimenduko Koadroen Asanbladaren ostean, Gazte Komunisten Kolektibook gure estrategia finduz joan gara, kalitatezko eta doako hezkuntza publiko baten alde borrokatzen jarraitzeko helburuarekin. Garai guzti honetan zehar **ikastetxe bakoitzean ikasle elkarteak** sortzeko apostu irmoa izan dugu, honakoa oinarritik eraikiko den ikasle sindikatu bat egituratzeko funtsezko urrats gisa ulertzen dugularik. Sindikatu bateratu hori ikaslegoarentzako tresna eraginkor bat bihurtzea nahi dugu, kapital monopolistak herri langilearen aurka, hezkuntzaren esparruan, zuzentzen dituen erasoei aurre egiteko ahal izateko.

G a r a i guzti honetan zehar **ikastetxe bakoitzean ikasle elkarteak** sortzeko apostu irmoa izan dugu, honakoa oinarritik eraikiko den ikasle sindikatu bat egituratzeko funtsezko urrats gisa ulertzen dugularik.

Azken 30 urteetako ikasle borrokak erakusten digu hezkuntza publikoaren kontrako erasoak ez direla fenomeno isolatuak, aitzitik, **hezkuntza publikoaren pribatizatze eta suntsitze prozesu baten** zati dira. Egun, eraso hauen azken erantzuleak **Europar Batasuna eta europar kapital monopolista** dira.

Borroka bakoitza, aurrera nahiz atzera pausoak eta, azken batean, kapitalismoaren eta herri langilearen arteko talka oro, gure borrokak aurrera eramateko ikasketa-prozesuaren zati dira. Ikasleen interesen defentsan egiten dugun borroka ere ez dago ikasketa-prozesu honetatik kanpo, eta gure borrokari ekin genionetik **GKK/CJCk argi utzi du ikasleak ahalik eta modu eraginkorrenean antolatzearen beharra.** Gure buruarekin koherente izanik, helburua orain borroka esperientzia guzti hori batzea da eta berau garatzea, ahalik eta azkarren, estatu mailako ikasle sindikatua eraikitzeko.

*Guillermo De Tuya*

# ¿Zer dago… …Ikasle Sindikatuaren atzean?


SE-ko zuzendariak, Tohil eta Beatriz, IU eta SE-ren arteko lotura materializatu zuten antolakundera afiliatuz.

Edozein ikasleri ezaguna egingo zaio Ikasle Sindikatua (Sindicato de Estudiantes) izena, **kapitalaren komunikabideen lehen orriak betetzen baititu** bere hiru eguneko grebekin, luzeak bezain eginezinak, noizbehinka ikasle batzuk ikastetxeetatik kalera ateraz.

80. hamarkadan sortu zen sindikatu honek, **langileen seme-alabak saldu zituen 1986/1987ko ikasle greba jendetsuan**, Juvendutes Socialistas-ekin lotura zuten bere buruzagiek herri borroka entregatu zutelarik orduan kapitalismoa gestionatzen zuen PSOE-ri. Baina ez gara aitzinako historiaz arituko, nahiz eta beharrezkoa izan egitura honen aurrekariak azalaraztea.

Ikasle Sindikatua **pertsona gutxi batzuen talde bat** da. Nolatan lortzen du orduan hainbesteko oihartzun mediatikoa bere hiru eguneko greba deialdietan? Estatuak eskaintzen dion etengabeko laguntzari esker: diru-laguntzak, nahiz eta sindikatu fantasma bat izanda ere liberatuak izatera iristeko aukerak ematen dizkiolarik, zuzendaritza profesionalizatu bat, **PRISA eta MEDIAPRO taldeen difusio neurrigabea** El País eta Público izanik banka eta enpresa handien komunikabideak.

*Ikasle Sindikatuaren zuzendaritzak lotura nabarmenak ditu PSOE-rekin eta, berriki, IU-rekin*

Konplizitate honek bi arrazoi ditu: Alde batetik, Ikasle Sindikatuak mobilizazio erraldoiak deitzen ditu antolakuntza koherentzia gabe **ikasleria erre eta desmobilizatuz**, prentsaren jabe diren enpresari eta bankari handiei komeni zaiena izanik, eta bigarrenik, **Ikasle Sindikatuaren zuzendaritzak lotura nabarmenak ditu PSOE-rekin eta, berriki, IU-rekin,** Ikasle Sindikatua bera alderdi hauetako jendeaz aberasten delarik. IU-rekin duen lotura berri honek, seguru aski, Estudiantes en Movimiento-rekin ("Ikasle Ekintza" Hego Euskal Herrian) elkartzea eragingo dio etorkizunean, honela ikasle indar erreformista gorena bilakatuz ikastetxe eta unibertsitateetan.

Ikasle Sindikatuak, bere jatorrietatik, ikasle mugimendu antolatua suntsitzen du, urteak daramatza sozialdemokraziaren "Troia-ko zaldia" izaten ikasleriaren artean.

*Pablo José Terrones*

# ¿Zer dago… …"Estudiantes en Movimiento"-ren atzean?



EeM-k ez du hezkuntza-tasen deuseztaketa eskatzen (doakotasuna). Igoeren aurka dago soilik.

Estudiantes en Movimiento (EeM) Estatu mailako ikasle elkarteen koordinadora bat da. **GKK/CJC-tik bertan parte hartzeko deialdia luzatu genuen duela urte batzuk,** hura Estatu mailako sindikatu borrokalari bat bihurtzeko intentzioarekin, guztiz doakoa izango zen hezkuntza publiko baten alde ukabil bakar baten moduan kolpatzeko Estatu osoan.

*Barne liskarrek ez zuten denbora askorik behar izan agerira ateratzeko ikasle mugimendu borrokalari bat nahi genunon eta erreformismoaren artean, akordio eta erreforma minimo batzuk lortzeko mobilizazioetaz baliatzen zirenak, alegia*

Hala ere, **barne liskarrek ez zuten denbora askorik behar izan agerira ateratzeko ikasle mugimendu borrokalari bat nahi genunon eta erreformismoaren artean,** akordio eta erreforma minimo batzuk lortzeko mobilizazioetaz baliatzen zirenak, alegia.Gauza da EeM-k errebindikazio taula bat defendatzen duela adibide hauekin: diru-laguntzen murrizketa progresiboa zentro pribatuentzat, Unibertsitaterako Sarrera Proben azken erreformak soilik atzera bota, Unibertsitateko eta Lanbide Heziketa zentroetako tasen piskanakako jaitsiera... finantziazio pribatu guztia kentzeko, ikasleriaren aurkako erreforma guztiak atzera botatzeko eta tasak kentzeko eskatu beharrean. Sektore borrokalariaren eta oportunistaren arteko barne kontraesanak agerian **geratzen dira are gehiago EeM-ko zuzendariek lehentasun handiagoa ematen ziotenean eztabaidetan Klaustrorako hauteskundeei Ikasle Greba bati baino.**

Gainera, bertako funtzionamenduak errebindikazio hauen edukiak aldatzea eragozten du, izan ere **batzorde exekutibo batek hartzen ditu erabaki gehienak** eztabaidarako aukerarik utzi gabe. Batzordeetako ki- deak topaketa bakoitzean bertaratutakoen arabera (gutxiengoa direnak) erabakitzen dira, gaitasun hobeak dituzten ala ez edo joan ezin izan diren elkarteak kontuan hartu gabe.

Beste aldetik, sartu berri nahi duen elkarte batek sekulako pazientzia izan behar du, **oso zaila baita dauden oztopo burokratiko guztiak gainditzea.**

Arrazoi hauegatik eta gehiagogatik ere **EeM-n topaketa gune bat ikusteari utzi izan diogun ikasleok geroz eta gehiago gara.** Ikusten dugu ikasle borrokalariak estatu mailan antolatu behar garela eta badakigu **EeM Ezker Anitza-IUren ikasle saila bihurtuko dela,** bertako kide gehienak GK-UJCE edo Ezker Anitza-IUko Gazteak baitira.

*Estrella Alonso*




*Gazteria Komunistak benetako ikasle sindikatu estatal baten alde borrokatzen du, langileen seme-alaben interesen defendatzailea, modu demokratiko eta garden batean funtzionatuko duena.*


Madrilgo Institutuen Blokeko ikasleak urriko ikasle greban.





# Asanblada eta elkarte baten arteko desberdintasunak

Langileak beraien lanpostuetan antolatzen diren bezala, **ikasleak beraien ikastetxeetan antolatu behar dira.** Gelen masifikazioa, azpiegituren hondatzea, eskola materialen salneurria, goi mailako ikasketetara sartzeko zailtasunak, eta abar ikastetxeetan bertan sufritzen ditugulako, azken finean kapitalismoaren estrategia hezkuntza pribatizatu eta elitizatzeko.

Hori bai, honen aurka nola borrokatzu ondo jakin behar dugu, b**i antolakuntza forma ohikoenen arteko desberdintasunak jakin behar ditugu** hau da: asanblada eta elkartea.

Askok hitz egiten dute asanblearismoan oinarritutako antolakuntza batean, kontutan hartu gabe **asanblada egitura oso ezegonkorra dela,** egun batean 50 kide izan ditzakeelako eta hurrengoan 10. Ezegonkortasun hau aurkitzen dugu asanbladan konpromiso maila desberdinetako jendea aurki dezakegulako bertan. Honek ez du esan nahi asanblada erabilgarria izan ez daitekeenik. **Asanblada batera deitu dezakegu zerbait zehatza antolatzeko,** greba edo ikastetxe bateko aldarrikapen batetarako adibidez, baina ezingo gara antolatu gure ikaskideekin horrelako antolakuntza ezegonkor batekin.

> ***Asanblada egitura oso ezegonkorra dela,*** *egun batean 50 kide izan ditzakeelako eta hurrengoan 10.*

Hemen elkartea dator. **Elkartea ikasleen nukleo sendo eta kontzientziatu bat da, konpromiso mailagatik eta etengabe borrokatzen duelako,** asanbladak deitzeaz arduratzen delako borroka egunetarako, modu honetan ikasleak barnebilduz elkartearen proiektuan.

Elkarte sendo eta finkatu hauek dira s**indikatu berri estatala altxatzeko** behar dugun oinarria, non ikasleak erasora salto egongo dugun hezkuntzarako eskubidea betirako konkistatzeko.

*Pablo Medina*

# Nola eraman borroka aurrera ikastetxe kontzertatuetan

Nahiz eta ikasle mugimenduaren jarduera nagusia ikastetxe publikoetan burutu, ezin dugu ahaztu **langile familietako gazteak badaudela ikastetxe kontzertatueta**n eta, beraz, ikastetxe hauek ere borroka guneak direla, batez ere bertan ikasten dutenentzat. Desberdintasun bat daukagu ordea, non mugapen gehiago saihestu beharko ditugun eta kasu gehienetan ikastetxetik kanpo ekin.

Bertako **ikasleak irakasle eta zuzendaritzarengandik askoz zelatatuagoak egoten dira** normalean ikastetxe publikoekin alboratuz, hau izan daiteke aurkitu dezakegun lehen mugapenetariko bat. Beraz edozein antolakunde artikulatzea zailagoa egiten da, hau gerta ez dadin saiatuko baitira **barne erregelamenduen bidez.** Ikastetxe erlijioso edo kontserbadoreetan bereziki jazotzen da hau, non ideia horiek ezartzen dizkieten ikasleei klaseetan, hauek borrokan sar ez daitezen eragin nahian.

> *Edozein antolakunde artikulatzea zailagoa egiten da, hau gerta ez dadin saiatuko* ***baitira barne erregelamenduen bidez.***

Irakasleek eta zuzendaritzak antolakuntza onartzen ez duten kasuetan, **ikasleak eskola orduetatik kanpo antolatu daitezke,** elkarte bat sortuz zeinak bilerak ikastetxetik ateratzean burutu ditzaketen, eskuorrien banaketak edo beste ekintzekin batera. Baina argi izan behar duguna da **ikasleak ezin direla kikildu zuzendaritzak esan dezakeenagatik**, hauek borrokatzen dugun hezkuntza eredu kapitalista baten ordezkariak dira-eta.

Ikastetxe hauetako ikasle eta irakasleei azaldu behar diegun kontu bat da **ez direla kalean geratuko hezkuntza publikoaren aldeko borrokan**, eta ikastetxeak modu publikoan gestionatu behar direla, langile klaseak zuzendutako hezkuntza eredu batean.

Honetaz gain, ikastetxe erlijiosoetan, komuniston taktika **ezin da izan enfrentamendu zuzenarena erlijioaren aurka,** sinismen hauen deuseztapena ez delako etorriko hauen kritika soilarekin, baizik eta herriari sinismen horietara iristera eragiten dioten arazo sozialen deuseztatzearekin, gehienak kapitalismoarekin lotuak. Horregatik, lehenik eta behin, hezkuntzaren pribatizazioaren aurkako borrokara batzera deitu behar ditugu ikasleak.

*Arturo Hermosa*

Hezkuntza Publikoaren aldeko Leongo manifestazio bateko pankarta. Murrizketak kapitala eta kleroarentzat!








"Basoetako suhiltzaileak, lan-eskubiderik gabe" lemapeko manifestazioa Madrilen.



# Basoetako suhiltzaileen borroka

Denok dakigu zein suntsitzaile diren gure mendietako suteak, eta hare gehiago landako h**erri langilearentzako den katastrofea,** etxerik gabe edo bizirauteko erabiltzen dituen baliabiderik gabe geratu baitaiteke (baserria, larreak, denda txiki bat, etab.).

Baina suteei aurre egiten dieten heroiei buruz hainbeste ez dakigu, ezta beraien lan-baldintza negargarriei buruz ere. Ia inork ez daki, jada gertatu den moduan, lanbide honetan ohikoak diren **istripu baten edo desgaste fisikoaren** ondorioz basoetan lan egiteko gai ez baldin badira, kalera doazela. Ez dugu suhiltzaile hauek duten soldata ziztrinaren berri, ezta kategoria profesional honi dagozkien hitzarmen kolektiboen inexistentziaren berri. Ez dugu **Tragsa enpresa publikoarengandik jasotako** tratu iraingarrien berri. Ez dugu etengabe bideratzen duten borrokaren berri, ez suaren aurka, lan erreformen aurka baizik, beraien esplotatzaileen aurka, eta azken finean, kapitalaren zapalkuntzaren aurka.

*"Bai noski, guk langile klasearen beste edozein borroka babesten dugu, estatu mailako langile baten beste edozein borroka, izan ere* ***proletargoaren lana aintzat hartzea nahi dugu".***

Haien ahalegina alferrikakoa da. Ezin digute gezurrik esan begibistan dagoenari buruz. Eta langileak antolatu egiten dira. Basoetako suhiltzaileak, haien artean **Basoetako Suteen aurkako Sorospen Brigada (BRIF),** antolakuntzaren beharraz jabetzen dira beraien eguneroko errealitatean. Haien borrokak batu, garaipenak antolatzeko. Basoetako suhiltzaileen kolektiboen batasuna orokorrean, BRIF-en modura sortutako Langile Elkarteetatik (ATBRIF), langile hauen borrokak batzeko beharrezkoa da. Eta baita ere langile klasearen batasuna ahalbidetzeko, bere garaipena antolatu dezan.

BRIF-eko Daroca-ko (Aragoi) langile baten hitzetan: "hau borroka soziala da. Ez dugu dirua irabazi nahi eta kito (...) Bai noski, guk langile klasearen beste edozein borroka babesten dugu, estatu mailako langile baten beste edozein borroka, izan ere **proletargoaren lana aintzat hartzea nahi dugu".**

*Rodrigo*

# Ebolaren gaitza edo nola langileak egiten dituzten patronalaren akatsen erantzule

Teresa Romero erizaina ebolarekin kutsatua izan eta gero, egun gutxi igaro ziren **Osasun-sailburuak gertatutakoaren errua langileari botatzeko.** Ez da lehenengo aldia izan eta ez da azkenekoa izango herri-langilea engainatzekotan, monopolioen boterea kudeatzen duten ministro eta sailburuek, langileek sufritutako oinazeen errua langileei botatzen dietela.

Gertatzen dena hau da: **produkzio-bideen jabeak direnek inposatzen dituzte lan-baldintzak,** beraz, ¿nork pairatzen ditu ondorioak? Langile klaseak bere lantokian. Burgesiarentzat, argi dago erizaina izan zela ebolaren birusarekin kutsatua izanaren erruduna. Ez zuen zerikusirik izan osasungintza publikoaren pribatizazio prozesuarekin, zeinak Carlos III Ospitalea hustu egin zuen, gaixotasun tropikalen tratamendurako erreferentzia zentroa zena Estatu mailan. Ebolaren tratamendurako profesionalen formakuntza eskasak eta honelako gaixotasunak tratatzeko baliabide faltak ere ez zuen zerikusirik izan.

Kapitalistek egunero esplotatzen gaituzte, miseriara kondenatzen gaituzte, gerretara gaixotasunetara eta bestelako basakerietara arriskatzen dituzte gure biziak. Beste adibide argiak non langileei errua bota dieten **Valentziako metroan gertatutako eta Alvia treneko Santiagoko istripuak** izan dira. Langile klasearen bizia ala etekin handiena jokoan dagoenean, inork ez dezala zalantzarik egin kapitalistaren erabakiarekiko. Ez da bihozgabeak direlako, **sistema hau langile klasearekiko esplotazio basatienean oinarritua dagoelako** baizik, baldintza oso txarren menpe, eta Marx-ek esan zuen moduan "kapitalismoa odol eta lokatz zorrotakada handia isuritzen dator mundura"-

***Produkzio-bideen jabeak direnek inposatzen dituzte lan-baldintzak,*** *beraz, ¿nork pairatzen ditu ondorioak? Langile klaseak bere lantokian.*

Gainera lan baldintza negargarriek eragindako istripuak, beraiek sortutako estresa, bizitokitik lantokirako desplazamendu handiak eta abar pairatzen ditugula... guri errua botatzeko kopeta dute?

*Alex Sanz*






"Denok gara Teresa" lemako manifestazioa, profesionalekiko errespetuaren alde. Urriak 11, Madril.

# Horrela **egiten du lan saltzaile** batek




*“Lan egiteko eta diru asko irabazteko gogoak dituzu? Zuretzako lan egokiena dugu.” Modu honetan hasten dira* ***lan baldintza oso pobreak ezkutatzen dituzten lan eskaintza asko.*** *Hauetariko gehiengoak saltzaile moduko lanak izan ohi dira.*

Normalean, lan-baldintzak **soldata oso baxuak dira, salmenten araberako portzentajeekin.** Ehuneko horien inguruan esplotazioaren gakoa dago, oso helburu handiak ezartzen baitituzte baldintza onak lortzearren, honek **ezarritakoak diren baino ordu gehiago lan egitera** edo, kasu askotan, gutxiengo soldata interprofesionalera ez iristera bultzatzen du.

Gizarte Segurantzan kotizatzeko modua ere (egiten denean) aztertzekoa da. Hain txarrak ez diren kasuetan, **egindako lanorduak baino gutxiago kotizatzen da**. Kasu txarrenetan lan legeria zuzenean ez da betetzen, **“gezurrezko autonomo”** bezala ezagutzen denaren trikimailua erabiliz. Enpresak Langile Autonomoen Erregimen Berezian alta ematera derrigortzen du langilea berak burutzen duen zerbitzu bat garatzeko.

Iruzurra den praktika hau ez da inolaz ere pasadizozko gertaera, baina lan ezegonkortasunak eta gaur egun gazterian dagoen langabezia tasak **gazteriaren zati bat kotizazio modu honetara gerturatzea eramaten ditu.**

*Lan legeria zuzenean ez da betetzen,* ***“gezurrezko autonomo”*** *bezala ezagutzen denaren trikimailua erabiliz.*

Badira forma desberdinak, kalean zehar **GKE**ntzako afiliazioa eskatzen duten pertsonak**, segurantzen salmenta** klasikoa, eta azkenik, **eredu piramidala i**ndarra hartzen ari da “multinivel” hitzaren atzean mozorroturik, non enpresa nagusiaren produktuak banatzen dituztenek jende gehiago lortzen duten produktu gehiago banatzeko eta portzentajeak behetik goranzka mugitzeko. Gainera, askotan saldu beharrezko produktuak erostera derrigortuak daude.

Langabezia maila handiak enpresek esplotazioa handitzea ahalbidetzen dute, **helburuak betetzen ez dituztenak eta kexatzen diren langileak kaleratzeko eta esplotatu daiteken beste pertsona bat bilatzeko aitzaki baita.** Lan-ezegonkortasun honek sindikatu batean sartzea edota langile borrokan parte hartzea zailtzen du, baina hala ere, ez da ezinezkoa, eta bereziki gure borroka soilik izan daiteke lan-baldintza duinak eman ahal dizkigunak.

*Pedro Pérez*

# Atsedenerako denbora ere **kentzen digute**

Goizeko 7tan jaikitzen naiz, dutxa bat hartu, jantzi, gosaldu eta garraio publikoa hartzen dut lan egitera joateko. Goizeko 9tan sartzen naiz lanera (hortan badut zortea), 2 orduko atsedena dut jateko, berriz lanera noa 4tan eta arratsaldeko 7tan ateratzen naiz. Lan egin eta gero, **birziklapen edo ingelerako kurtsoak ditut,** hori dela eta, gaueko 9tan edo 10etan iristen naiz etxera. Larunbatetan lan egiten dut goizetan, beraz larunbat arratsaldeak eta igande goizak ditut astean zehar egin izan ez ditudan gauzak egiteko. Etxea txukundu, janaria prestatu eta abar luze bat. Zuetako zenbat sentitzen zarete nere antzeko egoera batetan?

***Denbora kentzen digute antolatu ahal ez izateko,*** *beraientzako soilik lan egiteko helburuarekin*

Egunetik egunera **atsedenerako denbora murriztuz doa,** ez dago denborik ez pentsatzeko ezta hausnartzeko ere. Makinen tankerakoak gara eta gauzak inertziagatik egiten ditugu; hori da nahi dutena, haizeak putz egiten du eta gu eramaten uzten diogu. **Denbora kentzen digute antolatu ahal ez izateko,** beraientzako soilik lan egiteko helburuarekin, beraien esklaboak izateko. Gure lan-indarra 4 txanponen truke saltzen dugu eta gainera gu esplotatzen jarraitu nahi gaituzte; ez dugu gustoko eta horregatik min egiten digu.

Langile mugimenduaren eskakizun tradizionaletako bat 8 orduko lana, **8 orduko atsedena eta 8 orduko loalida** izan zen. Neurtu genezake langileek duten indarra eta patroiek dutena balantza batean ordu hauek nola banatzen diren gauza batetan edo bestean ikusirik. Izan ere, askotan 8 ordu baino gehiago egiten dugu lan, gainera lantokira joateko ere denbora galtzen da, eta lan egiten jarraitzeko denbora behar baduzu formatzeko, imajina dezakezue nola ari diren gure burua esplotatzen.

Argi dago **konponbidea ez dela beste alde batera begiratzea** eta egoera okerragoak daudela pentsatzea, konponbidea lankideekin harremanetan jartzea eta antolatuz aurpegia ematea da. Izan ere, atsedenaldirako denboraren aldeko borroka patronalaren aurkako borroka da **gure lana are gehiago ez esplotatzeko.**

*Markel Pum*




# Langile komertzialen boterea: kapitalistek irabazia jasotzea eragotzi.

*Espainiar industriaren desegiteak, Europar Batasuneko sarrera eta "zerbitzu sektorearen" despuntea arrazoi izanik, **langile klasearen existentzia ukatzen zuten diskurtso desberdinak** sortzea ahalbidetu zuen.*

**Komertzioarekin, informazioaren tratamenduarekin, kudeaketarekin, marketingarekin, publizitatearekin, komunikazioarekin, eta abarrekin** lotutako gaur egun ditugun lanpostu kopuru handiak, posible egin zuen klase borroka ukatzen duten korronte ideologiko desberdinak osatzea. Eskuineko aldetik, esanez langile klase industriala desagertu egin zela, beraz jada ez zen existitzen; baina baita ezkerreko aldetik ere, langile klase industrial gutxitu baten aurrean langileak balioaren sortzaileak ez zirela esan zuten, fabrika soziala zela baizik, hau da, gizartea bere osotasunean, lan intelektualekiko harremanetan. Honetarako, **Marx-ek proposatutako lan-balioaren eta gainbalioaren teoria ukatu egin zuten.** Jada ez zen langile klasea dena ekoizten zuena, orain jendartea izango zen, edo gaur egun esaten duten bezala, jendea. Honi kapitalismo kognitibo deitu zitzaion, eta jendarte honen lanari "lan inmateriala", Antonio Negrik eta Mauricio Lazzarato-k teorizaturik nagusiki, egungo oportunismoa defendatuz. Pablo Iglesias-ek, PODEMOS-eko liderrak, honi buruz ondorengoa esan zuen: "merkantzia kognitibo berria ezin daiteke denbora-unitateetan edo produktu-unitateetan neurtu, zehazkabea da eta batez besteko denbora sozialetako edozein ekuazioetarako menperaezina da, beraz, lan-balio lege marxista famatua jokoz kanpo uzten du" (Iglesias, 2005). Honela, Iglesiasek dio jada balio-lanaren legeak ez duela funtzionatzen, gaur egungo merkantziek, lan inmaterial baten fruitu, ez dutela langileek ekoiztutako lanaren balioaren zati bat barneratzen denbora-unitateetan neurturik, baizik eta **neurtu ezin daiteken gauza bat dela, subjetibitate sare batek sortua (adimenak)**, zeinak azkenean merkantzien balioen agerpena ahalbidetzen duten.

Zientzia marxistaren aportazio eta garapen guztiak ongietorriak baldin badira (eta hau komunista ororen zeregina da), teorizazio hauek marxismoa fundamentatzen duten printzipioen "berrikusketan" eta ukapenean erortzen dira. Nola ikusi ditzakegu gaur egun ikuspuntu marxistatik ekoizpen industrialarekin zuzenean loturik ez dauden enplegu hauek? Kapitalaren III. liburukian arazo honen formulazio teorikoa aurki dezakegu, baita honi irtenbidea aurkitzeko pista ugari. Marxek I. liburukian argi utzi zuen **balioaren sorrera eta ondorengo gainbalioaren ateratzea ekoizpen prozesuan geratzen dela, eta ez zirkulazio prozesuan.** Azken prozesu honetan ezer ekoizten ez baldin bada, zein paper izango lukete arropa-dendetako langileek, zerbitzariek, telemarketing operadoreek, produktu saltzaileek...?

Honek esan nahi du, langile komertzialik gabe kapitalistak ez duela lortzen gainbalioa "burutzea", merkantzia saldua izan behar baita burgesa azkenik gainbalioaren jabe izateko.

Marxek dio "komertzio langile bat beste edozein soldatapeko langile bat dela" bere soldata bere lan-indarraren erreprodukzioaren kostuengandik determinatuta dagoen heinean. Ez du baliorik sortzen zirkulazioaren eremuan kokatzen delako,

> *Zientzia eta instrukzio publikoa garatzen doazen bitartean, **geroz eta errazagoa izango da lan komertziala burutzea edozein pertsonarentzat***

baina kapitalista komertziala ezin daiteke hura gabe bizi zeren "nahiz eta gainbalioa ez sortu, kapitalista gainbalioaz jabetzea eragiten du ala ez". Honek esan nahi du, **langile komertzialik gabe kapitalistak ez duela lortzen gainbalioa "burutzea"**, merkantzia saldua izan behar baita burgesa azkenik gainbalioaren jabe izateko. Langile komertzialek ez dute beraz gainbalioa ekoizten, baina boteretsuak dira, izan ere **kapitalaren errotazio zikloa eten dezakete**, eta beraz, kapitalista industrialaren zein komertzialaren irabaziak geldiarazi.

Marxek dio hasiera batean langile komertzialak hoberen ordainduak direnak direla, baina badela joera historiko bat hau honela izateari utziarazi egingo diona: "ekoizpen kapitalista handitzen doan heinean jende honen lan-indarra balioa galtzen joango da; soldata gutxitzen doa lan-trebetasuna handitzen doan neurrian". Zientzia eta instrukzio publikoa garatzen doazen bitartean, **geroz eta errazagoa izango da lan komertziala burutzea edozein pertsonarentzat,** lan-indar hau merketzea eragiten baitu. Gazteen lan-merkatuko prekarietatea eta gazteria langilea zuzenduta dagoen sektoreak honen adibide argiak dira.

Negri eta Lazzaratorentzat zirkulazio eremuarekin zerikusia duten espleguen sistematizazio eta inplantazioak, zehazki merkantzien salmenta bizkorrak sustatzen dituzten teknikekin zerikusia dutenak (publizistak, estatistak, informazio kudeatzaileak, etab.), lan-balioaren legea baztertzera bultzatzen gaitu, "lan inmaterialak ekoizten du [...] balio ekonomikoa" printzipioa hartzen dugun heinean. Marxen teoria ezeztatzeko moduko argudio bat al da hau? Ez, lan mota horiek zirkulazio prozesuarekin lotutako zati espezializatuak (teknika eta teknologia desberdinen arabera garatuak) baitira. Lan-balioaren teoriaren amaiera defendatzea zirkulazio prozesuarekin lotutako lanak hazi egin direla esanez, zergatia ondorio bezala hartzea da. Izan ere, zirkulazio eremuaren garapena soilik ematen da "burutzeko balio eta irabazi gehiago" daudenean (Marx), **zirkulazio eremuaren balorizazioa aurkitzea ezinezko izanik**. Hori dela eta, Marxek defendatzen du "lan honen handitzea beti ondorio bat da, eta inoiz ez gainbalioaren handiagotzearen zergatia".

Lan inmaterialaren teoria beraz enpirismo arruntaren modura aurkezten zaigu.

Zeinak langile klasea ez den beste klase batzuen proiektuetara atxikitzea eragiten duen.

Lan inmaterialaren teoria beraz **enpirismo arruntaren modura aurkezten zaigu,** zuzenean industria-lana ez diren enpleguen hazkundearen jazoera gisa garatuz, baina analisia gauzatzeko marko teoriko bati uko eginez, zeinak **langile klasea ez den beste klase batzuen proiektuetara atxikitzea eragiten duen.** Ez da kasualitatea gaur egungo oportunismoak honen moduko iturrietatik edatea.

*Roberto Guijarro*

Landaren eta landako gazteriaren etorkizunaren aldeko manifestazioa. Urtarrilak 15, Madril.






# Gazteak landa eremuan: ez etorkizunik, ez aisirik, ezta baliabiderik ere

Espainiako landa-populazioa oso altua ez izanik ere (biztanleria osoaren %22 baino ez) eta populazio hau zaharkitua dagoen arren (%31 65 urtetik gorakoek osatzen dute) **oraindik ere asko dira herrietan bizi diren gazteak,** hamaika mugapen pairatzen dituztenak.

Herri askotan **ez dago ikasketak aurrera eraman ahal izateko oinarrizko baliabiderik (ez institututik, ez liburutegirik)** eta **udalerri hurbilenetara bidaiatze hutsa odisea bilakatu daiteke,** ordutebero edo bi ordurik behin pasatzen diren autobusetan bidaia amaiezinak eginaz. Herri zenbaitetan ez dago ezta garraio publikorik ere.

Honen ondorioz, ez da harritzekoa **landa-populazioaren %6k baino ez izatea goi mailako (unibertsitateko) ikasketarik, hirietan maila hori %11koa den bitartean;** asko eta asko, izatez, hirietara emigratzera beharturik ikusten du bere burua gradudun gisa lana aurkitu ahal izateko. Gazteek ez daukate ikasteko modurik, liburutegitik liburu ziztrin bat ateratze hutsak denbora nahiz diru kostu handiak suposatzen baitizkie.

Landa eremu gehientsuenek, gainera, **ez dute aisi ezta kulturari loturiko ekintzarik eskaintzen.** Kirol azpiegiturak, egotekotan, gaizki zainduak egoten dira, besteak beste, udaletxe txikien aurrekontuak geroz eta murriztuagoak baitaude. Esan beharrik ere ez dago ez dagoela ez museorik, ez antzokirik...

*Alkohol kontsumoa 10 puntuz altuagoa da landa eremuan hirietan baino eta **legez kanpoko drogen kontsumoa hiru aldiz handiagoa.***

Hortaz, gazte askorentzat **droga kontsumoa bilakatzen da euren "hobbya"**. Alkohol kontsumoa 10 puntuz altuagoa da landa eremuan hirietan baino eta **legez kanpoko drogen kontsumoa hiru aldiz handiagoa.** Nola da posible droga hain modu errezean iristea landa eremuetara, arestian aipatu dugun bezala hainbeste zailtasun baldin badago? Hemen, **autoritateek** (politiko zein polizialek, Guardia Zibilak betetzen duen papera bereziki azpimarragarria delarik) **rol oso garrantzitsu bat jokatzen dute, ezikusiarena eginez** kasurik gehienetan edota sustantzia hauen salmentan modu aktiboan parte hartuz.

*Ana Escauriaza*

# Hipokrisia garraioaren inguruan

Gazte garen heinean, ia egunero egin behar dugu **bidaiaren bat** lantegi edo ikastetxera joateko, lagunekin geratzeko, kirola egiteko, eta abar. Halere, garraio publikoen eguneratzea geroz eta txarragoa da.

**Hirien baitan garraio kostuak jasangaitzak bilakatzen ari dira** txartel eta abonoen prezioaren etengabeko goratzearen ondorioz. OCUk duela gutxi kaleraturiko txosten baten arabera, hilabeteko abonorik garestienak Madril (54,60€), Bartzelona (52,70€) eta Valentziakoak (45€) dira. **Atzerapenak** ere etengabekoak dira, Las Palmas Kanaria Handikoa eta Murtzia direlarik garraio publikoan puntualtasun falta handiena duten hiriburuak: hiru autobusetik bat ez da garaiz iristen. **Bidaia ertain eta laburretan garraioek duten erregulartasun ezak, nola autobus zein tren geltokien ixteak, hirien periferiak eta herri txikiak isolatu** eta diskriminatzen dituzte.

*Bidaia ertain eta laburretan garraioek duten erregulartasun ezak, nola autobus zein tren geltokien ixteak, hirien periferiak eta herri txikiak isolatu eta diskriminatzen dituzte*

Bizikleta erabiltzeko momentuan ere hamaika arazo izaten dira, izan ere, **hiri askok ez dute bidegorririk izaten** eta, edukitzekotan, kasu askotan, bidegorriok **akats handiak izaten dituzte euren diseinuan.** Hori gutxi balitz, **poliziaren bidegabekerien** arriskua existitzen da, espaloian zein errepidean egon **isuna** jartzeko arriskua baitaukagu. Zaragoza, Iruñea edota Gasteizko hiriguneetan gainera, bizikleten erabilpena mugatua ere izan da. Zeharka, garraiobide merke honen erabilpena zigortua izaten ari da.

Auto bat mantentzeko aukera duten pertsonek, autoaren beraren gastuez gain, etengabe gora eta gora dabilen **gasolinaren prezioari egin behar diote aurre, geroz eta garestiagoa baita depositoa betetzea.** 2014ko ekainean erregaiaren prezioak neurriz gaineko prezioak gainditu zituen, gasolina eta gasoleo litroa, hurrenez hurren, 1,456€ eta 1,346€ra iritsi ziren. Hortaz, autoa partekatzeko ekimenak sortu dira interneten eta, berehala, eurak legez kanpo uzteko lehen saiakerak abian jarri ditu gobernuak.

Sarri, herrialde sozialistei bidaiak mugatzen omen dituztenaren salaketa faltsua egiten zaie. Ikusi ahal izan dugun gisan, k**apitalismoa bera da bidaiok mugatzen dituena** hauek interes ekonomikoei atxikiz, gainontzekoak langabezia, prekarietatea eta muturreko pobreziara kondenatzen gaituen bitartean.

*José Luis Aedo*

Madrilgo Metroko langileen asanblada, lan-baldintza eta zerbitzu duin baten alde. 2010eko ekaina.











# KNE Greziako Gazteria Komunistaren 11. Kongresua

2014ko abenduaren 18tik 21era bitarte, KNEren 11. Kongresua burutuko da Atenasen. Honakoa izango da 11. Kongresuaren leloa: **"KNE, KKEren abangoardiako Gazteria, borrokaren borrokaz krisirik, gerrarik eta explotaziorik gabeko biharamun sozialistaren bidean".**

KNE baikortasun iraultzaileaz iritsi da bere 11. Kongresura. Greziak pairatzen duen krisi ekonomiko kapitalistaren testuinguruan, **baldintza kaxkar eta konplikatuekin,** behar bezala erantzun, indartzeranzko urratsak eman eta esperientzia berriak eskuratu ahal izan ditu.

Gure 11. Kongresu honetan, eztabaidak KNE ahalik eta hobekien indartzeko bideak aurkitzera bideratzea nahi dugu, baldintzak edozein direla ere, gazteriarengan eragiteko gaitasuna eta prestakuntza eskuratzeko, KKEren gazteria gisa, iraultza eta sozialismoaren garaipena helburu duen borrokarako erakunde gisa. Nola berritu, indarrak nola handitu eta, gaztedi herritar eta langilearen talderik bizi eta dinamikoenak eraginez, nola sortu abangoardiazko gazte-indar eraginkor bat, **monopolioen eta botere nahiz jabetza kapitalistaren aurkako borrokan parte hartuko duena,** klase borrokari uneoro behar bezala erantzungo diona.

*"KNE, KKEren abangoardiako Gazteria, borrokaren borrokaz krisirik, gerrarik eta explotaziorik gabeko biharamun sozialistaren bidean"*

KNEren 11. Kongresu honetan ere **gure erakundearen estatutuak egokituko ditugu,** berriki jasotzen joan izan garen esperientzietaz baliatuz.

Kontseilu Nagusiaren Tesietan nola kongresuaren aurreko elkarrizketetan **garrantzia berezia hartu du KNEren nazioarteko jardunak,** elkartasun internazionalistari, inperialismoaren aurkako borrokari, Gazteria Komunisten eta mundu zabaleko bestelako erakunde aurrerakoien koordinazio eta jardun bateratuari egindako ekarpena dela medio.

Baikortasunez, erresistentzia eta pazientziaz, **ziur gaudelako ekoizpen modu kapitalista suntsitua izatera kondenatua dagoela,** eta argi dugulako beste sistema sozial eta ekonomiko aurreratu eta garatuago batek ordezkatuko duela. Horrexegatik, kapitalismoaren eta monopolioen boterearen aurkako gure borroka indartuko dugu, krisirik, gerrarik eta esplotaziorik gabeko biharamun sozialistaren alde.

*Comité de Relaciones Internacionales del CC de la KNE*

# 50 ikasleren erailketa basatia Mexikon

Beste behin ere**, Estatuaren errepresioak** burgesiaren interesen menpeko hezkuntzaren aurka dihardutEn **ikasleak jo ditu bete-betean Ayotnizapan**, Mexikon.

Oraingoan, errepresiorik bortitzenaren biktima izan direnak Guerreroko estatuko ikasleak izan dira, zehazki Nazio Institutu Politeknikokoak eta Normal Rural Eskoletakoak. **Azken ikastetxe hauetako 50 ikasle desagertu ziren, geroago hilik agertu zirelarik.** Gertaera hauen egileak ikasle mugimendua izutzea helburu duten talde paramilitarrak dira.

*Azken ikastetxe hauetako 50 ikasle desagertu ziren, geroago hilik agertu zirelarik*

Mexikon ikasleek egiten duten esfortzu horretatik ikasi behar dugu, eurek sufritutako **metodo basati horiek etorkizunean Espainian ere gerta daitezkeela** kontuan hartuta. Gaur egun, langile klasearentzako kalitatezko eta doako hezkuntza sistema bat defendatzen dutenen aurka, klase zanpatzaileak aurrera daraman errepresioa isun, karga polizial, greben kriminalizazio... eta abarretan oinarritzen da. Ez da hildako gehiagorik izan 80ko hamarkadako ikasle greba handiez geroztik. Halere, klase borroka gogortzen doan heinean egoera hori berriz ere gerta daiteke.

*Rafael Medina*

# Iristear da Europar Gazteria Komunisten 11. Bilkura

Beste urte batez, Europako gazte erakunde komunistok Europar Gazteria Komunisten Bilkuren (MECYO siglekin ezagunagoa) 11. edizioa burutuko dugu. Aurtengoa Frankfurten, Alemanian, izango da martxoaren 7 eta 8an, **gure erakunde lagun den SDAJk (DKPko Gazteriak) antolaturik.**

Madrilen izan zen azken edizioa, 2014ko otsailean, eta gu izan ginen orduan antolatzaile, horren ondorioz, gure erakundeak emaitza bikainak eskuratu ahal izan zituen, politikoki nola antolakuntza mailan. Era berean, **GKK/CJCk konpromezu irmoa dauka hartua,** gure inguruko gazte erakunde komunisten artean, **gisa horretako bilkura eta elkarretaratzeak bultzatzen jarraitzeko.**

*Frankfurten, Alemanian, izango da martxoaren 7 eta 8an, **gure erakunde lagun den SDAJk (DKPko Gazteriak) antolaturik.***

MECYO gazte komunistontzako tresna garrantzitsua dela uste dugu, g**ure esperientziak elkartrukatu eta analisi politiko bateratuak kaleratzeko**, eztabaida lagunkoia oinarritzat hartuaz eta, era berean, gure herrialde ezberdinotan ematen diren klase borrokaren eguneroko adibideak partekatuz, hala, **gure alderdiekin batera,** sistema kapitalistaren suntsiketa eta Sozialismoaren eraikuntzarako bidean urratsak ematen jarraitzeko.

*Ester Cubero*



# CJCren 30 urteurrenaren garrantziaz.

2015eko urtarrilaren 13an, Gazte Komunisten Kolektibook 30 urte beteko ditugu, hiru hamarkada pasa baitira jadanik **Espainiako Herrialdeetako Alderdi Komunistak (PCPEk) GKK/CJCren Estatu Zuzendaritza Komisioa sortu zuenetik.** Honakoa dugu gure gazteriak izan zuen behin-behineko lehen zuzendaritza. Gazteria honen jaiotzea urtebete lehenago, 1984an, jasotako, eta Estatuan Alderdi Komunista berreskuratzea lortu zuen Komunisten Batasun Kongresuaren erabaki garrantzitsuenetariko bat izan zen.

*Gazte Komunisten Kolektibook 30 urte beteko ditugu, hiru hamarkada pasa baitira jadanik* ***Espainiako Herrialdeetako Alderdi Komunistak (PCPEk) GKK/CJCren Estatu Zuzendaritza Komisioa sortu zuenetik***

Urtebete geroago, 1986an, **GKK/CJCren lehen kongresua burutu zen 400 ordezkari baino gehiagoren partehartzearekin.** Lehen kongresu horren helburuak argiak ziren: marxismo-leninismoa berreskuratuz Gazteria Komunista berreraikitzea, **eurokomunismoa** eta sozialdemokraziaren antolakuntza moldeak **bertan behera uztea,** hala, Alderdi Komunista historikoak eta bere gazte erakundeak urtetan zehar egindako ukazio ideologikoari amaiera emateko.

Lehen urte horietan beti erasorako prest zegoen gazteria komunista bat eraiki genuen, ikasle mugimenduaren baitan mobilizazio handiak antolatu zituena, eta, **1985eko Greba Orokorraz geroztik, borroka sindikalean buru belarri aritu zena, baita bakearen alde eta Espainia NATOn sartzearen kontrako borroketan ere.**

Gazte Komunisten Kolektiboen historian zeresan handia izan dute nazioarteko mugimendu komunistaren eta gure Alderdiaren historiak, Espainiak bizi izan duen klase borrokaren garapenak eta baita **1989 eta 1991 artean Sobiet Batasunean eta herri demokrazietan jasotako prozesu kontrairaultzaileek ere.**

Gure historia modu kritikoan aztertu ostean esan dezakegu gure lehen urteetan argi ilunak izan zirela; positiboki baloratu behar dira ikasle mugimenduaren baitan masa erakundeei eman zitzaien bultzada, langile komisioen eta gazte lan munduaren baitan egindako lana, baita borroka eta elkartasun internazionalisten garapena ere (batez ere **Gazteria Demokratikoaren Munduko Federakundean sartu ginenez** geroztik). Halere, negatiboki baloratu behar ditugu ere Sobiet Batasuneko nola Europa ekialdeko zenbait herri demokrazietako alderdi komunistekiko genuen menpekotasun ekonomiko nola politikoa. Kontrairaultzaren garaipenaren ostean, **90eko hamarkadan, alderdi hauek gure erakundea desagerpenera bultzatu zuten ia,** Espainiako Herrialdeetako Alderdi Komunistaren proiektua suntsitzeko saiakerekin batera.

**90eko hamarkadaren erdialdetik XXI. mendearen lehen urteetara arte luzatu zen erresistentzia garai** baten ostean, CJCk bizirik dirau hamarnaka koadroren lan irmoari esker. Gaur egun, gure Alderdiko kide diren gizon-emakume hauek nola burkide zaharrenen tinkotasunak, baldintzarik txarrenetan **altxatu zuten langile klasearen bandera eta gure historiaren hari gorria ez haustea lortu zuten.** Lubakiaren sakontasunean igarotako erresistentzia urte gogorren ostean, euren lanaren fruitua mamitu egin da: berriz ere erasorako prest dagoen gazteria bat, herri jatorriko gazteak, langile gazteak, antolatzen hasia den erakunde bat, **6. eta 7. Kongresuetan** argi geratu zen bezala, erresistentzia garaia albo batera utzi eta, berriz ere, lubakitik kanpora jauzi egiteko prest dagoen gazteria bat.

*Kontrairaultzaren garaipenaren ostean,* ***90eko hamarkadan, alderdi hauek gure erakundea desagerpenera bultzatu zuten ia,*** *Espainiako Herrialdeetako Alderdi Komunistaren proiektua suntsitzeko saiakerekin batera*

Komite Zentralaren III. eta IV. Batzarretan urtemugaren kanpainari eman behar diogun garapen politikoa baloratu genuen. Hortaz, **egutegi bat sortu dugu, 2015 guztian zehar, GKK/CJCko militantzia guztiaren** nola Gazteria Komunistaren kide zein **lagunen partehartzea bultzatzeko** helburuarekin, estatuko lurralde hainbatetan.

Beraz, 30. urtemuga honen punturik garrantzitsuenak honakoak izango dira:

## “Juventud” aldizkariaren ale berezi baten berreskuratzea

2015ean zehar, GKK/CJCko kideok, **Tinta Gorriaren ale baten ordez, “Juventud” aldizkari historikoa berreskuratuko dugu.** Honakoa, 1936ko batasunaz geroztik, Gazteria Sozialista Bateratuaren adierazpen-organo izan zen eta, gerora, 50 urteren ostean 1986an, GKK/CJC sortu berriarena. Adierazpen-organo hura posible egin zuten burkide guztien omenez, aldizkariaren ale bat berreditatuko dugu.

## Gazteriaren II. Kanpaldia

2014az geroztik, “Trifón Medrano” Eskolak ordezkagu zituen **Gazteriaren Kanpaldiaren bigarren edizioak 30. urtemugaren inguruko tematika berezi bat** izango du, gure 30 urte hauek ospatzeko esposaketa eta ekintza hainbat gauzatuko direlarik

## GKK/CJCren 30. urtemugaren liburua

Hauxe izango da, 30. urtemugari begira, gure proposamenen arteko izarra eta, ondorioz, artikulu honen bizkarrezur. Komite Zentralak oso positiboki baloratu zuen **GKK/CJCren 30 urte hauetako historia** bilduko duen **liburu bat** egitea eta **plazaratzea, 2015 hasieran Madrilen aurkezteko.** Gero, lurralde guztietatik bira bat egingo da, gure historia, Gazteria Komunistaren historia, gure militante, jarraitzaile eta lagunei, eta orokorrean gaztedi osoari, ezagutarazteko.

Lan honi aspaldi eman zitzaion hasiera, CJCren oinarri eta lurralde-erakundeetatik **azken 30 urte hauetako dokumentu, aldizkari, akta, egunkari, kartel, pegatina eta abarren bilketa eta zentralizatzeari** ekin genionean. Lan zail baina beharrezko hau burutu ahal izateko Alderdiari laguntza eskatu genion lokal, egoitza eta etxe partikularretan bila zezaten eta lagungarriak izan zitezkeen materialak berreskuratu zitzaten.

*Komite Zentralak oso positiboki baloratu zuen* ***GKK/CJCren 30 urte hauetako historia*** *bilduko duen* ***liburu bat*** *egitea eta* ***plazaratzea, 2015 hasieran Madrilen aurkezteko.***

Espainiako proiektu iraultzaileak bizi duen aurrerapen koantitatibo eta kualitatibo honen testuinguruan, Gazteria Komunistak arreta berezia eskaini nahi dio datorren 2015ean zehar gazteria komunista marxista-leninistaren berreskurapenaren 30. urteurrenari.

**GORA GAZTERIA KOMUNISTAREN 30. URTEMUGA!**

*Sócrates Fernández, Gazteria Komunistaren Idazkari Nagusia*

# Euren burua marxistatzat dituzten teoriak

Marx Zizek Hardt Habermas Negri Bensaïd Marcuse

Seguraski, gure irakurleak ohituta egongo dira **"erradikal" hitza mespretxuzko modu** batean entzutea informazioaren monopolioen aldetik, pertsona edo erakunde hauek legez-kanpoko metodoak erabiltzen dituztela leporatuz, haien helburuak lortzeko.

Artikulu honetan hitz egin behar dugunaz guztiz murgildu aurretik, egokiena komunikazio baliabideek erabat gaitzetsi duten hitz honen inguruan gogoeta egitea da. Erradikal hitzak ez du legez-kanpoko metodoekin zerikusirik, baizik eta arazoei aurre egiteko bidearekin, arazoa politikoa, soziala zein naturala izanik. Hitz hau, etimologikoki latinetik eratorria da, eta edozein gairen funtsezko esanahia adierazi nahi du, edozein gairen sustraia. Beraz, **arazo bati modu erradikal batean aurre egiteak honen jatorri oinarrizkoena hartu eta eraldatzea da, gure arazoak modu erreal eta iraunkor batean konpontzeko.** Hau erradikal hitzaren esanahi marxista da [1] , eta edozein gaztek bat egingo du metodo eraginkor eta beharrezkoena dela benetan gure edozein arazori aurre egin nahi diogunean, edozein esparru eta edozein zientziatan.

*Teoria "berri" hauek subjektu soziala gaitzesten dute,* ***hauek aldaketa erradikalak burutu beharrean***

Edozein fenomenoren analisian dugun erradikaltasun horrek guk planteatzen ditugun konponbideak eraginkor eta zientifikoagoak izatea dakar. Horrela, bai **Marx bai Engelsek fenomenoek elementu nagusi eta sekundarioak dituztela aztertu zuten,** paper ezberdina jokatzen dutenak baina beharrezkoak direnak. Formazio sozioekonomiko batean, gure teorikoek gizartea bitan zatitu zuten: **honen basea (edo egitura),** metaforikoki elementu garrantzitsuenari hots eginez, eta **gainegitura,** zeina basearen eraikinaren gainean altxatzen den.

**Baseak gizarte jakin batean dagoen erlazio ekonomiko mota adierazten du** herrialde bakoitzean, eta **gainegiturak, berriz, sare politiko, juridiko, ideologiko eta sozialak adierazten ditu,** besteak beste, basearen gainetik eraikitzen direnak. Modu honetan, elementu mugatzailea, gizartearen sustraia, klase sozial ezberdinak euren artean dauden harreman formak dira, maila ekonomikoan. Honek ez du esan nahi gainegiturako gainerako elementuak baliogabeak direnik ( baseari modu batean eragin diezaioke, adibidez lan ordu maximoak erabakitzen dituen legeak harreman ekonomikoan eragiten du), modu "desberdin" batean eragiten dutela baizik, hau da, bi zatiak kontuan hartu arren, **harreta berezia jarri behar diogu lehenengoari (baseari) eragin erreal eta iraunkorrak lortu nahi baditugu** [2].

Beraz, gure atentzio gunea basean badago, base **ekonomiko hau eusten duen sektore soziala bilatu behar da.** Ikasleak? Abokatuak edo azkenaldiko politikari zintzoak? Epaileak edo intelektualak? Hauetako inor ere ez. Gaur egun ekonomia mantentzen duen elementu nagusia **langile klasea** da, bere klase etsaiarekin duen borroka etengabean: burgesiarekin.

Langile klasean kontraesan elementalenak ditu bere baitan baseak, kapitalismoaren barrutietan bizi baita. Gainera, **klase hau da gizarteak behar duen aberastasun guztia sortzen duena:** kotxeetatik hasita etxebizitza eta elikagaietaraino.

Langileriaren klase kontzientziaren etengabeko galerarengatik, batik bat **Bloke Sozialistako ideologiaren ahultze prozesu eta teoria oportunisten gorakadagatik** ( zeinak aurreko artikuluetan aztertu genituen), oinarrizko zimentu hauek ahaztuz joan dira.

Aurreko Tinta Rojan (25. alea) ikusi genuen moduan, teoria bakoitza klase sozial baten interesekin bat dator, eta **langile klasearen papera ( base ekonomikoaren oinarri bezala) ukatzen duten teoriak, superegituraren papera gainjarriz, ez dute inoiz langile klasean oinarririk.** Nabaria da gizartean aldaketa erradikal bat nahi ez dutenak, aginte forman aldaketa sinple batzuk egitea helburutzat dutenak, adibidez "ustelkeriaren etetea", "kapitalismo jasangarria", "ahalduntzea" eta herrialdeko gazteriaren parte hartzearen hazkundea (hauen kontraesan sozialak kontuan hartu gabe). Baina **ez da esplotazioaren abolizioa eztabaidatzen, ez dutelako arazoa jasaten, arazoa arrotza dutelako** edo kasurik egokienean jasaten dute, baina oportunismoaren eragin politikoak hainbeste manipulatu du beraien ikuspuntua, non ezin duten arazoa ikusi.

*Macusek planteatzen zituen teoriak bezala generoa, arraza, etab. gizarte kontraesantzat jotzen dituzten teoriak edo* ***borrokarako elementu nagusitzat hizkuntza desberdin baten erabilera zutena***

Modu berean, **teoria "berri" hauek subjektu soziala gaitzesten dute, hauek aldaketa erradikalak burutu beharrean** ( burutzeaz hitz egiten dugu ez dugulako inolaz ere ukatzen bide honetan borrokatu nahi duten sektore sozialak ez daudenik, baizik eta gizartearen elementu nagusia ez izatean, ez daudela prest horrelako lanak modu aislatuan egiteko). **Macusek planteatzen zituen teoriak bezala** (zeinak ikasleriaren papera guztiz goraipatzen zuen), generoa, arraza, etab. gizarte kontraesantzat jotzen dituzten teoriak edo borrokarako elementu nagusitzat hizkuntza desberdin baten erabilera zutena ( hizkuntza errealitatearen adierazpena besterik ez denean eta aldaketa soziala ez denean hizkuntzaren aldaketagatik ematen, errealitatearen aldaketagatik baizik). Hauetako asko **68ko maiatzean jaiotakoak,** batzuetan "marxista" edo "marxismoarentzako ekarpena" goitizena hartzen dutenak.

Hauetako bakoitzak dena prozuditzen duen subjektuaren "ahazte" ikusgarri bat elkarbanatzen du: langile klasearena. Orduan, **Marx eta Engelsen teoriaren printzipio funtsezkoenari uko egiten badiote,** nola har ditzakegu marxistatzat?

*Liher Calleja*

1 "Erradikala izatea arazoei sustraietik erasotzea da. Eta sustraia, gizakiarentzat, gizakia bera da" Karl MARX, Hegelen Eskubidearen Filosofiari kritika, 1844

2 Nozio marxisten laburpen soil batzuk Ekonomia Politikoari egindako Ekarpenaren Sarrera obran laburtuta aurkitu ditzakegu, 1859an Friedrich Engelsek idatzia

# PCPEren apostua koordinazio komunista internazionala handitzeko

PCPEk, bere sorreratik, 1984tik, erlazio internazionalei harreta berezia eman dion alderdi bat izan da. Inoiz ez dugu **koordinazio komunista internazionalaren mekanismoan aurrera egiteko** nahia ezkutatu, eta gure lan internazionalaren zati zabal bat eskaintzen diogu gai honi.

Mugimendu Komunista Internazionalak (MKI) bizi duen egoera konplexua da. Azken urte hauetan langile klase internazionalari aurkeztu zaizkion zailtasun berrien ikusle izan gara, eta hauen aurrean **erakunde komunisten erantzuteko ahalmena oso aldakorra izan da,** kontraesankorrak batzuetan.

> *Inoiz ez dugu koordinazio komunista internazionalaren mekanismoan aurrera egiteko nahia ezkutatu*

**Alianza estatal inperialisten** (EB, adibidez) analisia, iparamerikar inperialismoaren hegemonia kolokan jartzen duten **potentzia berrien etorrera, langile klasearen izaera iraultzailea ukatzean datzaten korronteen berpizkundea** eta, honekin, abangoardia diren alderdi komunisten beharrak zailtasun serioen aurrean jartzen du MKI, eta langile klaseak bizi duen egoera latzari erantzun iraultzailea eman behar zaio.

Zoritxarrez, koordinazio internazionala eztabaidatzeko dauden espazioek, **Alderdi Komunista eta Alderdi Langileen Topaketa Internazionala**, adibidez, ezin diote aurre egin egungo egoerari.

Egoera hau dela medio, PCPEk uste du koordinazio komunista internazionalaren hazkundea lortzeko bideak maila ezberdinetan ematen direla, baina gehienbat eremu regionaletik ( Europa, Amerika, Asia, etab.) eta aldebikotik ( bakoitzaren neba-alderdiarekin). Horregatik **PCPE izan da Alderdi Komunista eta Langile Alderdien Iniziatiba Europarra** ( Europako Iniziatiba Komunista, laburbilduz) **sortu eta bultzatu duen erakundeetako bat.** Honek aurrerapausoak eman nahi ditu alderdi komunisten posizio amankomunen artean, zeinak **ez diren oportunismoak europan duen tresna nagusiaren kide: Europako Ezkerraren Alderdia.**

Urtebete besterik ez izan arren, Europako Iniziatiba Komunista hau bere fruituak ematen hari da **kide diren erakundeen harteko harremanen garapenean,** eta Europar Batasunean egoteak dakartzan arazoen aurkako kanpainak aurrera eramateko balio izan du.

Bestalde, PCPEk interesa du langileria internazionalari eragiten dioten gaiei buruzko etabaida sakonagoak egiteko espazio bat garatzeko. Interes antzekoak zituzten erakundeekin **Aldizkari Komunista Internazionalaren (RCI)** sortzaile izan ginen 2009an, honen 6. alea prestatzen hari delarik. Eremu ideologikoan eztabaidak egiteko aukera funtsezkoa da Mugimendu Komunista Internazionala jasaten hari den krisitik ateratzeko, eta klase etsaiaren hegemonia galerazteko, batzuetan izaera oportunista adierazten dutenak.

> *PCPE izan da Alderdi Komunista eta Langile Alderdien Iniziatiba Europarra*

**Gaur egun ez gaude Internazional Komunista berreskuratzeko baldintza egokietan, baina gure helburu estrategikoa da**. PCPEren esku-hartze internazionalak helburu hori jarraitzen du eta taktikoki antolatzeko gai da indar korrelazioa kontuan hartuz.

Gure klase etsaiaren antolakuntza internazionalak, EB, NATO, NDF eta Munduko Bankua bezalako egiturekin, **ahal bezain posizio bateratuena lortzera** behartzen gaitu, gure klaseak historian zehar ezagutu dituen tranpetan erori gabe.

Langileria beste klaseen interesen menpe jartzea akats izugarria da, **Lehen Mundu Gerraren** aurretik bizi genuen bezala. Gestio kapitalista **gobernu sozialdemokraten parte hartzearen** bidez legitimatzeak alderdi komunistak egin dituen aurrerapauso guztiak deuseztatzen ditu.

Kapitalismotik sozialismo-komunismorako trantsizio aroan bizi gara, eta gure helburu nagusia **Iraultza Sozialista antolatzea** da, betiere jakinez hau lortzeko komunisten interbentzio zuzena beharrezkoa dela.

Marx eta Engels guztiz zuzenak izan ziren Manifestu Komunistaren amaieran. **Herrialde guztietako langileak, elkar zaitezte!** Leloak guztiz eguneratua egoten jarraitzen du, soilik horrela izango baita langileria monopolioaren eta burgesiaren interesei kolpe zuzena emateko gai, azken garaipenera arte

*Ástor García*



[Nazioarteko Mitin Komunista, 2012an Madrilen ospatuta, ondorengo Alderdien presentziarekin: Greziako Alderdi Komunista (KKE), Frantziako Iraultzaile Komunisten Batasuna (URCF), Frantziako Berpizkunde Komunistaren Bilgunea (PRCF), Alderdi Komunista (PC) Italiakoa eta Espainiako Herrialdeetako Alderdi Komunista (PCPE)]

# Artea, etsaiaren aurkako gerrarako tresna

Pablo Picassok esan zuen bezala, "pintura ez da sortu departamentuak apaintzeko, etsaia erasotzeko eta honen aurrean defendatzeko gerrarako tresna izateko baizik". Autoreak ongi adierazi zuen moduan, margotzen zituen kuadroak behar bezala **azaltzen zuen egokitu zitzaion momentu historikoko errealitatea,** modu honetan salatzen zituen urte haietan herriak jasaten zituen egoera tamalgarriak. Antzekoa da haien artelanak e**duki politikoz hornitu edo klase izaera ematen** dieten autoreak, bai herriari irakasteko edota honek borrokatzeko unean arma bat eskura izateko, bere burua artista moduan hartu aurretik. Arte errealista arte abstraktuaren aurka. Gaur egun dilema hau musikan, literaturan, margolanetan, zinean, antzerkian edota kontzientzia maila adierazi daitekeen edozein eremu kulturaletan ematen da.

Ikustera ohituak gauden eguneroko langile borrokaren antzekoa da. Bere arazoez eta interesez kontziente den langile batek eskura dituen baliabideekin proletalgoaren iraultza bultzatzen du. Arazoak ikusten ez dituenak, ordea, burgesiaren interesak sustatzen ditu. Artea sortzen duen langilea bere egoeraren kontziente da, eta **produzitzen duenarekin inguruko errealitatea aldatu** nahi du, botere gosea duen klasea salatuz. Bestalde, bere burua artsistatzat jotzen duenak egiten dituen obrak ez dute inolako errealismorik, **errealitatearen abstrakzioa edo sahiestea bilatuz,** intentzio bikoitzarekin: lehenik salaketa sozial baten arrastoa kendu eta bigarrenik langile iraultza bat ekar dezakeen edozer ezkutatu.

*Artea sortzen duen langilea bere egoeraren kontziente da, eta **produzitzen duenarekin inguruko errealitatea aldatu** nahi du, botere gosea duen klasea salatuz.*

Kapitalismoak ez du nahi bere gezurrak azaleratzea, baina langile klaseari hare gutxiago berori engainatzea.

*Guillermo Terán*

# Tinta Rojako atal berria: Gazteontzako kirola!

Tinta Rojaren helburua **ez da beste aldizkari politiko bat izatea,** helburua zera da, ez soilik gazteriari kapitalismoan bizitzeak dakarren esanahia erakustea ezta herrialde osoan gazteriaren borrokak emandako aurrerapausoez aritzea, baita ere **gazteok gizarte honetan jasaten ditugun injustiziak bildu eta antolatzea.** Tinta Rojaren helburua baliogarria izatea da, bozgorailu baten moduan jokatzea. Horregatik argitaratu da atal berria: "Gazteontzako kirola".

Horrelako atal baten beharra hau da: kirola, gauza askoren artean, kapitalismoak izugarri mugatzen du. Atal honetan ikusi ahal izan dugu kirolaren inguruan dauden arazoak, saskibaloiko arbitro batenak, Rugbyko kluben prezio altuak, hiri-patinajea egiten dutenek jasan behar dituzten multak, gimnasio modernoen irabazi ekonomikoak, eta abar. Laburbilduz, atal honen helburua **edozein gaztek bere esperientzia partekatzea da,** normalean isilpean ditugun arazo horiek argitaratzea, alegia.

*Kirola, gauza askoren artean, kapitalismoak izugarri mugatzen du*

Guk **gazteen garapen osoa** eskeintzen dion kirol herrikoi bat nahi dugu, **oztopo ekonomiko zein administratiborik gabe.** Hau lortzeko, lehenengo urratsa gustokoen dugun kirola askatasunez praktikatzea eragozten diguten oztopoak salatzea da. Horregatik, aldizkari honetan gazte guztiei dei egiten diegu atal berri hau irakurtzera eta, batez ere, gure posta elektronikora (tintaroja@cjc.es ) norberaren bizipenak bidaltzera. Tinta Rojako atal bat gazteria langile eta herrikoiaren atal bat baita.

*J.M.R.*

# Aisia

## *Diska bat...*

***MultiViral - Calle 13***



MultiViral da **Calle 13-ren azken lana.** Bandaren erritmo bereizgarria atzean uzten duen erregistro aniztasunak harrituta utziko gaitu. **Adentro** bezalako kantuekin argi utzi zuen taldeak bere heldutasun politikoa, eta nabarmentzekoa da bere "erretorika gonazalea" pakea, berdintasuna eta justiziari buruzko gaiengatik aldatu duela. Horren adibide da Silvio Rodríguez kantautoreak egindako kolaborazioa **Ojos de color sol** kantuan, baita Eduardo Galeanok diskoaren sarreran egindakoa eta WikiLeaksen sortzailearen parte hartzea.

## *Pelikula bat...*

***Dos días, una noche - Jean-Pierre eta Luc Dardenne***




**Dos días, una noche-k** Sandraren istorioa kontatzen digu. Gazte honen lankideek Sandraren kaleratzea onartu dute, beraiek **1.000 euroko ordainsaria** jasoz gero. Filme honetan **Dardenne anaiek** klase elkartasunari, eta honen gabeziari buruz diardute, merkatu laboralean langileek duten lehia adieraziz, non patroiak mendeak daramatzan konsigna madarikatu bat aplikatzen: **"banatu, eta garaituko duzu".**

## *Liburu bat...*

***El mito de la guerra buena, Jacques R. Pawels-ena***




Beti esan zaigu, bereziki Hollywooden eskutik, **AEBk Bigarren Mundu Gerran** demokrazia eta askatasunaren izenean basakeria naziari aurre egiteko sartu zela. Baino **El mito de la guerra** buena-n, Pawels-ek ongi erakusten du benetan amerikarrak gerran sartzera bultzatu zuena, jokoan zeuden interes ekonomiko eta naziekin batera, **estatu batuetako korporazio handiek, filofaxistek gidatuak** ( Henry Ford, besteak beste), **lituzten negozioak zirela.**

*Fernando Puertas eta Eric Rodríguez*

# IV konferentzia antolakuntza eta finantzak

## Gure metodoa perfekzionatuz esku-hartzea hobetzen dugu.

Pasa den Urriaren 25ean, **GKK/CJC-ko 200 militante eta 70 ordezkaritza baino gehiago** batu ginen Madrilen antolakuntza eta finantzen arloei buruzko eztabaida prozesuaren lehen fasea bukatzeko.

Antolakuntza eta Finantzen IV Konferentzia honek **Espainiako Gazteria Komunistaren sorkuntzan aurrerapauso izugarria** suposatu du. Antolakuntza ereduan sakondu dugu, zentralismo-demokratikoa beti gidari izanez; bere oinarri, indar eta urte askotako lanarekin gogoeta egin dugu, iraganeko akatsak atzean utzi eta aurrera jarraitzeko.

**Antolakuntzan finantzak duen garrantzia** azpimarratu dugu, finantzarik gabe ez baitago proiektu iraultzailerik, finantzarik gabe gure lana mugatzen baitugu.

Koferentzia prozesuaren lehen fasea bukaturik, bigarrenari hasiera eman diogu, GKK/CJCko militantzia guztiaren gain **kolektiboki hartutako erabakien aplikazioa.**

Bigarren fase honek antolakuntzaren finkapena erakarriko du gazte komunisten kolektiboren bat dagoen lekuetan. GKK-ko militantziaren ezaugarri nagusiena **atseden gabeko lana da, norberaren bizitza proiektu politikoarekin lotzea;** Leninek esan zuen moduan: "militante komunistak ez dira iraultza denbora librean bultzatzen dutenak, bizitza osoan zehar bultzatzen dutenak baizik.".

Mahai gainean dugun erronka **auzo, ikastetxe eta lantoki bakoitzean indar komunista** haztea da, %50eko langabeziaren aurka, zerbitzu publikoen pribatizazioaren aurka eta abarren aurka borrokatzeko modu bakarra baita, eta, batez ere, antolakuntza eta borroka gabe ez baitago etorkizunik gazteria langilearentzat. Komuniston indarrak **elkartuta eta guztiok batera kolpatuz,** langile klasearen garaipena bermatuko dugu.

**Gora Gazte Komunisten Kolektiboak!**

*Marina Gómez, GKK/CJCren Komite Zentraleko Antolakuntza arduraduna*












30 urteurrena

1985-2015

Gazteria **Komunista**